# URTARRILAREN 22an
# San Bizente, diakonoa eta martiria



## Sarrera-agurra

Laugarren gizaldi hasierakoa dogu santu martiri hau. Ospe handia izateraino heldu da. Daciano enperadorearen agindupean izan zan eraila 304ko urtean.

Huescan jaioa, loturik eta oinez eroana izan zan Valenciara. Zaragozako gotzainak bere laguntzaile izateko hartu eban bere esan-ezina gainditzeko. Bizente hitz onekoa zan, eta horrexegaitik hartu eutson gorroto Dacianok eta hiltera emon eban.

## Irakurgaia (2 Kor 4, 7-15)

Esanezina eukan Zaragozako gotzainak hartu eban Bixente bere laguntzaile ebanjelioaren iragarpenerako. Horixe da gogoratuko deuskuna irakurgai honek: iragarpenean sufritu beharra izango dogula, baina ez gaituela menperatuko, eta askorentzat izango garala eredu eta onuragarri.

*Jesusen bizia agertzen da gure izate hilkor honetan.*

## San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

Senideok: Ministeritzaren altxor baliotsu hau buztinezko ontzitan daroagu, argi agertu dadin honenbesteko indarra Jainkoagandik datorrela, eta ez gugandik. Alde guztietatik estutzen gaitue, baina zapaltzen ez; larri gagoz, baina ustea galduta ez; erasopean bai, baina eskutik itzita ez; lurrera botatzen gaitue, baina hondatzen ez; nonahi eta beti Jesusen heriotza daroagu geugan, Jesusen bizia be gugan agertu dadin.

Bizi garan bitartean, heriotzara garoez beti

Jesusegaitik, gure izate hilkor honetan Jesusen bizia be agertu dadin. Holan, heriotzeak dihardu gugan; zuengan, barriz, biziak.

Hau dino Liburu Santuak: «Sinistu neban, eta horregaitik hitz egin neban». Guk be, sinismen-espiritu bera dogula, sinisten dogu eta horregaitik berba egiten dogu, jakinik, Jesus Jauna biztu dauanak biztuko gaituala gu be Jesusegaz, eta honen ondoan ipiniko gaituala zuekin batera. Hau guztia zuen onerako da, Jainkoaren dohaia askorengana zabaltzean, esker ona be askorengan ugaritu dadin, Jainkoaren aintzarako.

Jaunak esana

**Erantzun salmoa** (Sal 033)

Badago Jainkoa goresteko eta aintzaltzeko arrazoirik, batez ere haren ontasuna eta indarra ondo-ondoan somatzen danean. Geure otoitz bihurtu daigun salmo hau, eta azaldu daigun Jainkoagan dogula uste ona jarrita.

**Ebanjelioa** (Mt 10, 17-22)

Inoiz ez da izan erreza Jesusen jarraitzaile izatea. Harek iragarten deuskun Jainkoa ez da geure komenentziakoa, zintzotasuna eta besteen ardurea eskatzen deuskuna baino. Egin deiogun harrerea Aleluia abestuz, zutunik.

**ESKARIAK**

—Eleizearen alde: ebanjelioaganako zintzotasuna bilatu daian, pobreen alde jarriz beti, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Gure gizarte honetan lekurik aurkitzen ez dabenen alde: burua botatean ez daiela pentsatu, senidearen zerbitzuan jartea baino, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Herri agintarien alde: euren ardurak betetean, ahulenak ere kontuan izan daiezan, gizarte solidarioa bultzatuz, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—San Bizente omentzeko alkartu garanok, geure hitz jarioa Jainkoa goresteko eta besteen alde berba ondo egiteko erabili daigun, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

**Azken agurra**

Santua dan Jainko gure Aitak santutasunera deitzen gaitu. Ez dogu nahikoa lege eta arauak eta ohiturak beteteaz. Bere Seme Jesusen jarraitzaile gura gaitu, ingurukoentzat ere eredu izateraino. Bilatu daigun, ba, Jesusen jarraitzaile izatea gure egunerokoan, Jainkoa goretsiz eta senide pobreengana hurreratuz.